

# Aragoiera

**Aragoiera** (*aragonés* edo *luenga aragonesa*) Aragoiko (Espainia) Pirinieotako zati batzuetan mintzatzen den erromantze hizkuntza da. Erdi Aroko hizkuntza gisa, mundu akademikoan nafar-aragoiera izenaz ezaguna da.

Egile batzuek VIII. mendearen inguruan latinetik jaio zela uste dute[erreferentzia behar]. Historikoki, euskararen eragina jaso zuen hastapenetan, bai eta ondoko katalanarena, okzitanierarena eta gaztelaniarena ere: azkena eragile nagusia da.

2009ko azarotik, aragoiera eta katalana babesteko asmoz, *Aragoiko hizkuntzak erabili, babestu eta bultzatzeko legea* onartu zuen Aragoiko gobernuak. Lege horrek ez du aragoieraren koofizialtasunik jasotzen, baina hizkuntzaren lurraldean eskubide batzuk onartzen ditu[1].

Idaztarauari dagokionez, eztabaida izan da, bi erabiltzen baitira: 1987ko Uescako arauak[2] (Consello d'a Fabla Aragonesak bultzatua), batetik, eta 2004tik Sociedat de Lingüística Aragonesak defendatutakoa[3] (*Grafía SLA* deitua), bestetik, 2010eko otsailean, banaketa bukatzeko, Academia de l'Aragonések *Behin-behineko proposamen ortografikoa* kaleratu zuen[4].

## Eduki-taula



**Aragoiera**

Idioma aragonés — Aragonés

Aragoieraren hizkerak urdinez (arrosa argiz, benasquera, aragoiera eta katalanaren arteko trantsiziozko mintzaira).

**Datu orokorrak**

| | |
|---|---|
| **Lurralde eremua** | Espainia |
| **Hiztunak** | ~25 556 (2011) |
| **Rankinga** | *Ez 100 mintzatuenen artean* |
| **Ofizialtasuna** | Aragoiko berezko hizkuntza[1] |
| **Eskualdea** | Aragoi (Huescako Pirinioetako bailara batzuetan) |
| **UNESCO sailkapena** | 3 arrisku ziurran |
| **Araugilea** | Academia Aragonesa de la Lengua (BOA 24/05/2013) |

**Hizkuntza familia**

hizkuntza nostratikoak

Hizkuntza euroasiarrak
Indoeuropar hizkuntzak
Italiar hizkuntzak
Hizkuntza erromantzeak
italo-mendebaldeko hizkuntzak
mendebaldeko hizkuntza erromantzeak
Gallo-Iberian languages (en)
Occitano-Romance languages (en)

**Informazio filologikoa**

| | |
|---|---|
| **Hizkuntza-tipologia** | subjektua aditza objektua |
| **Denbora gramatikalak** | past anterior (en) |
| **Modu gramatikalak** | indikatibo |
| **Kasu gramatikalak** | nominatibo |
| **Alfabetoa** | latindar alfabetoa |

**Hizkuntza kodeak**

| | |
|---|---|
| **ISO 639-1** | `an` |
| **ISO 639-2** | `arg` |
| **ISO 639-3** | `arg` |
| **Ethnologue** | `arg (http://www.ethnologue.com/language/arg)` |
| **Glottolog** | `arag1245 (https://glottolog.org/resource/languoid/id/arag1245)` |
| **Wikipedia** | `an (https://an.wikipedia.org)` |

# Hiztunen geografia

10.000 hiztun inguru daude, Huescako hurrengo lekuetan, batik bat: Graus, Monzón, Balbastro, Fonz, Hecho, Estadiella, Benás, Samianigo, Chaca, Plan, Ansó, Ayerbe, Broto eta Lo Grau.

# Dialektoak

*Artikulu nagusia: «Aragoieraren dialektoak»*

- **Mendebaldeko aragoiera** edo *aragonés ozidental*. Bost aldaera ditu: *ansotano* (Ansoko ibarra), *cheso* (Hechoko ibarra), *aragüesino* (Aragues eta Chasa), *aisino* (Aisa) eta *chaqués* (Chaca).
- **Erdialdekoa** edo *zentral*: Alto Gallego eta Sobrarbeko (Bielsa) eskualdeetan.
- **Hegoaldekoa**, *meridional* edo *semontanés*: Semontano eta Ayerben.
- **Ekialdekoa** edo *oriental*: Ribagorza eta Sobrarbeko (Chistauko ibarra eta A Fueba) eskualdeetan.

# Historia

Lehen testu ezagunak, *Glosas Emilianenses* izenekoak, X. mendekoak dira. XII. eta XIII. mendeetan lekukotza idatziak ugaritu ziren, eta XIV.ean, Juan Fernández de Heredia, lehen idazle esanguratsua, bizi izan zen.

XVII. mendean, Ana Abarca de Bolea serorak testu batzuk utzi zituen, baina hiztunek XX. mende arte ez zuten euren hizkuntzaz irakurtzeko hainbeste aukera izan. 1977an, Francho Nagorek lehen gramatika liburua kaleratu zuen, bai eta zenbait fikziozko liburu idatzi ere.




2005ean abiatu zuten "Chuntos por l'aragonés" izeneko egitasmoa, hizkuntza batua lortzeko helburuarekin eta hainbat elkarte eta hiritarrek sostengatua. Horren emaitza Academia de l'Aragonés erakunde araugilearen sorrera izan zen, urte bat geroago.

# Literatura

*Sakontzeko, irakurri: «Aragoierazko literatura»*

Egile klasikoen artean, Juan Fernández de Heredia azpimarratzekoa da. Gure garaikideen artean, bestela, Chuse Inazio Nabarro, Francho Nagore, María Pilar Benítez Marco, Nieus Luzía Dueso, Óscar Latas Alegre, Chusé María Satué edo Ana Tena Puy ezagunenetarikoak dira.

## Musika

"Mallacan", "Biella Nuei", "Prau", "Lurte" eta "La Orquestina del Fabirol" taldeak, bakoitza bere estiloan, aipagarriak ditugu.

## Elkarteak

- **Consello d'a Fabla Aragonesa**: 1976an jaiotako kultur erakundearen webgunea. Francho Nagore bertako *Consello Asesor* azpitaldearen presidentea da.
- **Ligallo de Fablans de l'Aragonés**: 1982an sortutako kultur erakundea.
- **Sociedat de Lingüística Aragonesa**: 2004an abiatutako kultur erakundea. Xavier Tomás Arias idazkaria da.
- **Academia de l'Aragonés**: 2006an sortua.

## Hedabideak

- "Portal de l'aragonés": direktorio digital gaurkotua eta zabala, erakunde, argitalpen eta hedabideei buruzkoa.
- "Llengües Vives": Europako hego-mendebaleko hizkuntza gutxituei buruzko buletina, Bartzelonatik koordinatua, aragoieraren gaurkotasuna ere jorratzen duena.

## Oinarrizko esamoldeak

- *Buen día / Buen diya* – Egun on
- *Buena tardi* – Arratsalde on
- *Buena nueit* – Gabon
- *Muitas grazias* – Eskerrik asko
- *Vaiga bueno! / Au!* – Agur
- *Por favor / Per favor* – Mesedez
- *Biemplegato* – Ongi etorri
- *No repleco / No acato* – Ez dut ulertzen
- *Lun(e)s* – Astelehena
- *Martes* – Asteartea
- *Miércols* – Asteazkena
- *Chueves* – Osteguna
- *Viernes* – Ostirala
- *Sabato* – Larunbata
- *Domingo* – Igandea

## Hiztegiak

- Aragonario (https://aragonario.aragon.es/) Gaztelania/aragoiera hiztegi elektronikoa. Internet bidez kontsulta daiteke, gaztelaniazko hitzak aragoeiraz nola esaten diren jakiteko. Consello d'a Fabla Aragonesa-k 2013an argitaratu zuen Antonio Martínez Ruiz-en paperezko hiztegian oinarritua.[5]

# Erreferentziak


1. ↑ a b (Gaztelaniaz) *"10/2009 Legea, abenduaren 22koa, Aragoiko berezko hizkuntzak erabili, babestu eta bultzatzeko.* (http://www.boa.aragon.es/cgi-bin/BOAE/BRSCGI?CMD=VEROBJ&MLKOB=478436853737) Aragoiko Boletin Ofiziala, 252. zkia., 2009ko abenduaren 30a"
2. ↑ (Aragoieraz) *Normas graficas d l'aragonés* (http://www.consello.org/pdf/normasgraficas.pdf), Aragoieraren Normalizaziorako I. Kongresua, Huesca, 1987.
3. ↑ (Gaztelaniaz)*De Lingva Aragonensi* aldizkarirako ortografiari buruzko oharrak (https://sites.google.com/site/sociedat/grafia), *Sociedat de Lingüística Aragonesa*, 2006.
4. ↑ (Aragoieraz) *Propuesta Ortografica Provisional de l'Academia de l'Aragonés* (http://www.academiadelaragones.org/biblio/PROPUESTA_ORTOGRAFIA_PROVI.pdf), 2010eko otsaila
5. ↑ Martínez Ruiz, Antonio, 1945-. (2002). *Vocabulario básico bilingüe aragonés-castellano y castellano aragonés.* (https://www.worldcat.org/oclc/433172866) (2a. ed. corr. y aum. argitaraldia) Publicazions d'o Consello d'a Fabla Aragonesa ISBN 8495997029 PMC 433172866 (http://www.pubmedcentral.nih.gov/articlerender.fcgi?tool=pmcentrez&artid=433172866) . Noiz kontsultatua: 2019-05-06.


# Ikus, gainera

- Aragoieraren 1987ko arau grafikoak
- Europako hizkuntza gutxituak
- Nafar-aragoiera

# Kanpo estekak

- (Aragoieraz) Portal de l'aragonés (http://www.charrando.com/)
- (Gaztelaniaz) Chuntos por l'aragonés (http://www.laragones.com/)
- (Aragoieraz) Consello d'a fabla aragonesa (http://www.consello.org/)
- (Aragoieraz) Ligallo de fablans de l'aragonés (http://www.fablans.org/)
- (Katalanez) Llengües Vives (http://www.llenguesvives.org/)
- (Gaztelaniaz) Sociedat de Lingüística Aragonesa (http://www.sla-web.org/)
- (Aragoieraz) Academia de l'Aragonés (http://www.academiadelaragones.org/)
- (Aragoieraz) Arredol (http://www.arredol.com) - Diario digital en aragonés
- Aragonario (https://aragonario.aragon.es/) Gaztelania/aragoiera hiztegi elektronikoa Interneten



Hizkuntza honek bere Wikipedia du: Bisita ezazu.

**Hizkuntza erromantzeak**

| | |
|---|---|
| **Ekialdekoak** | Aromaniera • **Errumaniera** (moldaviera, valakiera) • Istro-romaniera • Meglenera |
| **Hegoaldekoak** | Sardiniera (campidanera, logudorera, sassariera) |
| **Mendebaldekoak** | Astur-leonesa (asturiera, extremadurera, leonesa, mirandesa, montañesa) • Borgoinera • *Dalmaziera* • Emiliano-romagnoloa • Erretorromaniera (erromantxea, friuliera, ladinoa) • Franche-comtera • Frankoprovenzera • **Frantsesa** • Galiziera (eonaviera, fala) • Galoa • **Gaztelania** (kaloa, latinoamerikar gaztelania) • Istriera • **Italiera** • **Katalana** (algerera, balearrera, erdialdekoa, valentziera) • Korsikera (gallurera) • Ladinoa • Liguriera (genovera, monakoera) • Lombardiera • Lorrenera • *Mozarabiera* • *Nafar-aragoiera* (aragoiera, *errioxera, nafar erromantzea*) • **Napoliera** • Normandiera (jerseyera, guerneseyera) • Okzitaniera (gaskoia, limousinera, proventzera) • Piemontera • Pikardiera • Poitevin • **Portugesa** (afrikar portugesa, brasildar portugesa) • **Siziliera** • Valoniera • Veneziera • Xanpainera |

Letra *etzanez*: hizkuntza hilak. Letra **lodiz**: 5 milioi hiztun baino gehiagokoak. Parentesi artean: parentesiaren ezkerrean dagoen

